JESUS'EN BIOTZAREN

# JAURESKUNDIA

(ENTRONIZAMIENTO)

A. KANDIDO BASABE'K (S. J.)

EGIÑA

(Bear dan legez)




(Bakocha 15 zentimoan)

DURANGO'N

Florentino Elosu'ren Etše Argitaldari'an

— 1914 —



# JESUS'EN BIOTZAREN JAURESKUNDIA

**Ez da gauza barria.**—Batek baño geyagok entzun nai irakurri izen au, ta egingo dabe eurakan: ¿orain be gauza barria? ¿Ez al-daukagu naikua lengo oneraskera edo deboziño-moduakaz?

Jakin begie onek, Jesus'en Biotzaren Jaureskundia ez dala gauza barria, gauza zar barristaua baño. Jesus'en Biotzak eskiñi eutsan Zorioneko Margarita Maria Alakoke'ri: «Neuk onetsiko (bedeinkatuko) ditudaz, neure Biotzaren irudia agirian ipiñi, ta aintzat artzen dabenen echiak.»

Ordutik ona ezin esan-aña zabaldu da, ez dakit nun Euskal'errian baño geyago, Jesus'en Biotzak eche-aurrian nai atian ipinteko oituria. Eta aingeruak, Egipto'tarren seme-nagosiak il biar ebazanian, Judea'rrenik euren artian il ez egian, agindu eutsen lez bildots-odolaz ate-buruak igortzteko: baita gaurko egu-

nian be bildotz aregaz iruditu zan Jesus' en Biotzaren irudia echeren baten ezartia, eche ori Jesus'en echetzat autortzia da.

Ona emen zegaitik dan Jesus'en Biotza'r en ain gogozkua oitura eder ori. Gizaldi onen azipenian ipiñi zanian, diabru-semiak atera eben zarata, amurru ta gora-goriak be, argiro au erakusten deusku.

## JAURESKUNDIAREN IZAPENA

Eche-atian nai eche-aurreko orman Jesus'en Biotza'ren irudia erakutsiaz, autortzen da, esan dogunez, eche ori Jesus'ena dala. Baña ez jako orregaz bakarrik, eche-barruan tokirik emoten; ez da sendiko (fameliako) bat egiten.

Eta ara nun otuten yakon Jesus eta Maria'ren Biotz Santuen Anaidiko A. Mateo Crawley-Boerey'ri, Paray-le-Monial'en, Z. Margarita Maria Alakoke bizi izan zan errian, Jesus'en Biotza jaurestia, au da, echeko atetik barrura sartu, ta sendiko (fameliako) Jaun, Buru ta Errege egitia.

Itundurik Vives, Kardenal zanagaz, eta Merry del Val'egaz, eta euren bitartez Aita Santu Pio amargarrenagaz, guztiok onetsi eben.

Lenengoz jaureskunde au egin ebana, Andra Juana Ross, «Valparaiso'ko Santua» deitzen jakona izan zan, 1908 g. Chile'ko sendi askok jarraitu eben; eta andik beko-ameriketara, gero goikora (Estados Unidos) ta beste lurreko toki askotara zabaldu izan da. Gotzain (obispo) gichi izango dira onetsi, ta parkapen askoz aberastu barik ichi dabenak.

Geure artian be zabaldu da; ta, onakuetan oi dana, ez gara izan makalenak gogoz artu, ta zintso aurrera eruaten.

Baña Jesus'en Biotza'ganako zaletasun ain sutsua dauken Euskaldun-artian, eche bat geratu ez dedin jaureskunde eder, gozatsu, onuraskor au egin bakorik: euskeraz ipiñi nai izan dogu, laburrian, zer dan eta zelan egin biar dan.

## JAURESKUNDIAREN IZAKERIA

Oneraskun au Jesus'en Biotza echeko Buru ta Jauntzat autortzian dago. Onetarako ipinten da bere irudia echeko tokirik agiri ta ederrenian, jarlekuan (tronuan), echeko guztiak ainbat sarrien ikusi ta osterantzekuak be ezagutu dagien, eche a Jesus'en Biotzari emonda dagola; ta Erregetzat, euren maitetasunezko Erregetzat, echeko guztiak, eta

beti, ta alde guztietan, eta beste gauza guztiak baño geyago maitetu nai daben Erregetzat, ezagutu ta autortzen dabela.

Iru gauza dira, ba, biarrekuak: Jesus'-en Biotzaren irudia echeko tokirik ederrenian Errege-antzera ipiñi; autortu zor deutsagun menpetasuna, ta bere aurrian, bere maitetasunaren gerizpian, eten-barik bizi.

## JAURESKUNDIAREN EGOKITASUNA

Jaureskunde au beti legoke ondo; baña gaur dan egunian dator iñoizko onduen. ¿Ez dakuskuz edonun gizon galdu, diabruz beterikuak, Jesu-Kristo, gure Jaun andi, zeru-lurren Jaube ta erregia, gure asabak jaso eutsezan jarlekuetatik kendu ta bastertu nairik? Kendu dabe legietatik, oituretatik, paperetatik, kalietatik, echietatik, izenetatik: geure biotzetatik euretatik be, albaleukie, aterako leuskigue. ¡Orra nora jo dogun gure asaba ain Jesus-zalien ondorenguok!

Arek ez legerik ateraten eben, ez paperik baltzitu, ez dirurik orketu (moldiau), ez echerik jaso, ez ontzirik egin, ez solorik edegi, Jesus'en izen, edo ezaupide, kurutzia, ezarriaz, gauza bakochar-

en jaubetasuna emon barik: ondorenguak, barriz, Jesus'en lekuan, bakocharen, edo emazte nai umien izenak ipinten dabez, eta eskerrak gizon gaiztuenak ezarten ez dabezanian. Geyenak esaten dabeegitez, gaurko ziñesbakuen buruak, bere jauregia eregiteko Jesus'en irudia bota nai ebanian ziñuana: «kendu ortik, neu geratu biar naz-da.»

¡Eta ori bakarrik balitz! Baña, ¿ez aldagoz beste asko, euren buruak katoliko, ta bestiak baño obetzat euki arren, Jesus'egaz uriko gauzetan artu-emonik nai ez dabenak; legietatik, oituretatik, agiriko gauza guztietatik, naita edozein gaiztori leku emon, lapurra baliz lez, besotik oratu ta ateraten dabenak? ¿Ez dagoz beste asko, ¡eta zenbat! au chartzat emon arren, lotsatuta, Jesus'en alde arpegirik ateraten ez dabenak?

Geyago ondio. Edonok daki zenbat alegin egiten daben gaiztuak, gure umiei Jesus'en irakaskizunik ez emoteko; Jesus ezagutu ezik, maitute be ez dabela egingo-ta.

¡Ze egokia, orduan, gaurko egunian, Jesus'en irudia artu, ta bakochak bere echian, tokirik onenian, Erregetzat ipintia! ¡Ze ziñes-autorkuntza ederra, ze erakutsi onuratsua, echera datozanentzat!

¡Ze egokia, umiak, irudi eder ori begien aurrian beti eukiaz, euren biotza maitetasunera lenengoz zabalzen yakeneko, beraganako maitetasuna artu dagien!

## ¡JAURESKUNDIA BENETAN EGIN!

¡Ez, gero, egikizun au umekeritzat artu! Ezta egin be, bestiak egiten dabela-ta. ¡Zintso, ganoraz, egin! Echekuak ain onak izan ezarren be, ¡egin! Jesus'en Biotzari echia emon, eta bere menpian biziteko, egin. Ez dagiala, gero, norbaitek esan: Eche ori Jesus'en Biotzari emonda dago; baña...

## JAURESKUNTZIA

**Jaureskunde eguna:** Jaureskundia egiteko, artu begike egun bat, ez eleizaz andiena, baña bai sendientzat (famelientzat) gomutagarriena; adibidez: eskondu ziranekua, aita nai amaren izenekua, seme-alabaren bat batiatu, edo lenengoz jaunartu ebanekua, ta olan.

**Jaurestokia:** Echeko tokirik ederrenian ipiñi biar da. Esan biarrik ez dago, al-danik ederrena izan biar dala, zurezkua ezin bada, miesa edo telazkua; ta besterik ezinian paperezkua, loraz nai

orriz orniduta. Ez dago ezin leikenik; eta balego, bestiak, batezbe neskatillak, egin dagiuela.

**Irudia:** Al-dala, surezkua, edo paper-surezkua. Oberik eziñian, paperezkua. Onakuak, Deusto'n, Mensajero'an, (1) saltzen dira, peseta bian, bateterdian, baten, iru errialen, eta errial bian. Amarretik gora eskatu ezkero, merkiago.

Daukanak ez daukanari emotia, Jesus'en Biotzak ondo zarituko dabena da. Baña ez edozelan zabaldu; jaureskundia zer dan irakatsi, ta benetan egingo dabenari bakarrik emon.

## JAURESKUNDERIA

**Irudia:** Ipiñi begike mai-ganian, nai beste toki egokian, onesteko (bedeinkatzeko) dagon Jesus'en Biotzaren irudia.

**Batu bertan sendi** (famelia) ta deituta dagozan adizkide ta enparauak.

**Onetsi irudia:** Abade jaunak, erroketa ta estola zuriaz, esango dau:

—Adjutorium nostrum in nómine Dómini.

—Qui fecit cœlum et terram.

—Dóminus vobiscum.

—Et cum spiritu tuo.

(1) Durango'n, Elosu'ren echean.

OREMUS: Omnipotens sempiterne Deus, qui Sanctorum tuorum imagines pingi non réprobas, ut quoties illas óculis córporis, intuemur, toties, eorum actus, et sanctitatem ad imitandum memoriæ óculis meditemur, hanc, quæsumus Imaginem in honorem et memoriam Sacratissimi Cordis Unigeniti Filii tui Domini Nostri Jesu Christi adaptatam, bene † dicere et sanc † tificare digneris; et præsta ut quicumque coram illa Cor Sacratíssimi Cordis Unigëniti Filii tui suppliciter cólere et honorare studúerit, illius méritis et obtentu, a te gratiam in præsenti, et æternam gloriam obtineat in futurum. Per Christum Dóminum nostrum. Amen.

(Ultimo aspergat aquà benedicta.)

**Kredua:** Guztiak argi esan begikie, euren ziñesmena agertzeko.

Abade jaunak, nai aitak esango deutso Jesus'en Biotzarik urrengo

## AGURRA

Erdu, Jesus, geure Jaun maitegarriori, zeure Ama gozuagaz, geure ezeukian eskintzen deutzugun echechu onetara.

Gaurko egunian toki guztietatik ainbestek jaurtiten bazaitue, guk beintzak pozik artzen zaitugu. Ona emen guztiok Zu artzeko batuta.

Gure onduan Zu bizitia nai dogu; gure atzera-aurreretan, gure poz-atsekabietan, asko-gichi eukian, eta gora-bera guztietan, (1) [gure umien pozetan,] gure gizonen asmuetan [gure zarren gomutetan,] Zu sartu zaitezala.

Gure ezta-baidetan argitu, Jauna; arriskuetan iragarri, zirikaldietan eutsi; asmuetan zuzendu [batezbe geure bizibidia (estadua) artzeran;] baña, beste gauza guztien gañetik, zeure maitetasunian gartu gagizala.

Erakarri gagizuz, Jauna, zeugana, egunian baño egunian onago ta kristiñau zintsuago eginda. Ez, Jauna, aldendu gugandik zeure begiak gure bizitzan; eta eriotzan errukiz, arren, begiratu.

---

(1) Taket-artekuak ichi, sendian (famelian) olakorik ez dagonian.

Zu Jaun eta gu menpeko gariala, Zu Agintari ta gu esaneko; zeure bildur santuan, baña geyago ondiok zeure maitetasunian, bizi gaitezala, gure echian pekaturik aurkitu barik.

Zeruan dagozan gure senitartekuak Zugaz batian begiratu dagiguela. Euretarikorik garbilekuan balego, aterau.

Gure echekorik pekatuan eta zure adizkidetasun barik bizi bada: errukitu, Jauna, ta zeuganatu.

Ona emen gure echekuok; onetsi (bedeinkatu,) arren, Jesus onorrek, guztiok [baña batezbe gure seme-alaba maite onek.] Baita emen aurkitzen dirian adizkidiok be.

¡Jauna! Ez gara gu ezer, Zu gure bizitokichu onetan sartzeko. Baña euntariagana (zenturion) juan, Zakeo'nian sartu ta Maria Magdala'tarrenian bizi ziñian ezkero, sartu ta bizi zaite emenche beti: arik-eta, bata bestien ostian, eche onetatik

zeruko zeure echera igaro arte.

*Aita-guria, Agur-Maria ta Gloria, sendiko illen alde.*

## JESUS'EN BIOTZA JARLEKOTZIA

Aitak, edo amak, edo onduen datorrenak, artu ta ipinten dau, gero, irudia, gerturiko jarlekuan.

**Abestia** (kantua): abestu be egin lei, al dan tokian.

Aitak, edo amak, edo beste echekorren batek, nai abade jaunak esan lei urrengo

## BERBALDIA

Autu dogu Jesus'en Biotza eche onetako Erregetzat: *Ecce Rex vester; orra zeuen Erregia.* Judea'rrak bota eben, baña guk artu dogu.

Eche onetako Erregia Jesus'en Biotza da.

Erregia, baña maitetasunezko Erregia, ez bildurrezkua. Egin dagigun, ba, beti eche onetan Jesus'en Biotzak nai ta agintzen dabena.

Berak guk ziñestia nai dabena,

ziñestu dagigun; gogoratu, berak guk gogoratzia nai dabena; irakurri, berak guk irakurtia nai dabena; esan, berak guk esatia nai dabena.

Maitetu dagigun berak maite dabena; ta berak gorrotatzen dabena, geuk be gorrotau dagigun. Egikunak, oiturak, arazuak, autuak, adizkidiak, jolasak, soñekuak, dana izan biar dau eche onetan Jesu-Kristo gure Jaunaren legekua.

Baña batezbe alegiñik andiena egin biar da, eche onetan pekatu aztunik ez egiteko. Maitetu Jesu-Kristo ta bere gauzak, batezbe bere ordeko Aita Santu, Obispo ta abade jaunak; eta geure bizitza guztian agertu kristiñau zintso ta benetako.

Ez dagigula Jesu-Kristo'k bere aurrian egindako okerrik arpegira jaurti; bada ez dogu jarlekotu geure gaiztakeriak ikusteko, gure beragañako apaltasun, esanekotasun eta maitetasuna artzeko baño.

Bera da gure Erregia; berak gu

autu gaitu, guk bera baño geyago.

¡Goratua izan bedi Jesus'en Biotza!

¡Betorkigu bere agintzia!

¡Egin bedi bere guraria, zeruan lez lurrian be!

*Salve.*

---

BIOTZ-OTOITZAK (jakulatoriak)

¡Jesus'en Biotz guztiz Santua! ¡Betorkigu zure erreiñua (300 egun. park. bakoitz.)

¡Mariaren Biotz guztiz gozua! Zeruratu gagizuz.

Onetsiko ditu abade jaunak, esanaz:

*Benedictio Dei Omnipotentis, Patris et Filii et Spiritus Sancti ✝ descendat super vos et maneat semper. Amen.*

A. M. D. G.

**SAN INAZIO'REN EJERTZIJUAC** au da **ONDO CONFESAU TA KOMULGAU-TEKO IRAKAZQUIZUNAC** Jesusen Lagundico A. Candido Basabe'cuac Ejerzijo ta Misiñuetan azalduten dauzan leguez.

Auše da baserrietaraco Mesa liburuen artean egoquiena; ta orregaitic ezteitela gure Vizcai'co baserrietan iñor guelditu berau erosi baric.

*Saltzen da bacocha bost errialen Durango'n Elosu'ren echean.*